# BERTZO BER̃IAK
## Erezilko baso mutil̃ak jar̃iak

— 1 —

Mil̃a pasata beratzi eunda
Oeta amabi gar̃en ur̃tera
Komeni data abiatu naiz
Bertzo ber̃iak jartzera
Egun batian sartu giñaren
Kristau gaiztuaren tartera
Zeiñ aldetatik aldatu dezun
Ondo kontuak atera.

— 2 —

Zerbait esaten astera nua
Guztizko borondatian
Ez det pentzatzen izengo danik
Askorentzako kaltian
Endregatubak jar̃i gaituzte
Bizigiñanak pakian
Baso tratu bat izandalako
Beizema'ko partian.

— 3 —

Telefonua Beizema'tikan
Jozuen gure er̃ira
Baso tratuba zer̃atutzeko
Etzuen asko cupira
Mejora danak beretzat naiditu
Galerak ber̃iz erdira
Lenago tonto zeuden txoriak
Ederki argitu dira.

— 4 —

Baso tratuba egiñ genduan
Orain ukatu egindu
Len etzekien bakiña batek
Gauza orire jakindu
Sobratzen bazan pagatzekotan
Atzera zigun agindu
Toki onian gelditzen giñan
Lanikan egin bagendu.

— 5 —

Bazu-arekin or̃ek egindigu
Ikara-gar̃izko burla
Pentzatzen degu au esateko
Ar̃azoya badegula
Beria ondo egin ezkero
Or̃i etzako ajola
Eginda gero ukatze-kotan
Tratun ez asi sekula.

— 6 —

Zuk egindako despreziuak
Ondo dauzkagu jasuak
Uste estala etortzen dira
Kolpera amenazuak
Gauza onikan ekar̃ldigu
Zuk saldutako basuak
Esanda egin edozer libre
Gizon eskandalosuak.

— 7 —

Taza-tzail̃a beamakua
Izendatu zan aur̃ena
Biak conforme izatekuan
Arek egiten zuena
Konzienziai begiratubaz
Egin zuen alzuena
Artu-emanak berdin dabizkin
Er̃espetozko gizona.

— 8 —

Danok lanera juan giñaden
Gu Ostiela goizian
Atzera laister bueltako giñala
Esanda-kuak bazian
Jendia laiste asperdutzenda
Dirurik izan ezian
Jornal gabeko mor̃oneruak
Aspaldi aspertu ziran.

— 9 —

Enpara-zire egin zigun
Gonbreztazio zikiñez
Apenas dauan asko jantziya
Orazio ta dotriñez
Zure munduba ala dijua
Iñori kalte egiñez
Zenbat olako egiña zeran
Jainkuak beste jakiñez.

— 10 —

Bere ustetan or̃ek egindu
Elementozko azaiña
Txasku polita sartuko zigun
Tontuak izan bagiña
Oraiñ bertzuak jar̃i dizkagu
Or̃en sufritu eziña
Olako lanik etzan izango
Formal portatu baziña.

— 11 —

Er̃ezil'dikan atera dira
Oraingo bertzo ber̃iak
Sentimentuba daukaten batzuk
Ar̃azoiakin jar̃iak
Oso zailada zenbait personi
Ondo artutzen neur̃iak
Aitu nai ez duenik iñor badago
Itxi bitza belar̃iak.

— 12 —

Mundu onetan gizon guztiak
Nola ez geran berdiñak
Jendiak gouan eukitzeitu
Bestiak gaizki egiñak
Baño legeori ezdu erakusten
Jesukristoren dotriñak
Nai dezunian bueltak jar̃i
Asmau koitugu ordañak.